ARANA-GOIRI'TAŔ SABIN




# OLEŔKIJAK



PUBLICACIONES
DE
EDITORIAL VASCA · EUZKO ARGITALDARIA

BILBAO, 1919

# BILA-BIDIA

## ABESTIJAK

## ARANA-GOIRI'REN OLEŔKIENTZAKO ITZ-AUŔE LABUŔA

*Itz baŕi gutxi esan negiskezu, irakuŕle on ori, Arana-Goiri'taŕ Sabin'en Oleŕkietzaz. Euzkel-irakuŕzale oroen edo beintzat geyenen aŕtean aŕas ezagunak dira, banaka an-emen saŕi argiŕaldu izan diralako. Baña gauŕ, idazti baten bilduta eskeintzen yatzuz, ta txukundo argiŕalduta gero, Sabin aundiaren oleŕkiok. Beste zoŕ askoren aŕtean, gure Sabin maiteari auxe be geneutson, eta ordain-aldia oraintxe eldu yako: ¡zelako atsegin ta maitasunez opaltzen dautsogun oraingo idazti au! Goitik beŕsku berak.*

*Abeŕtzalea ba-zara, irakuŕle ori, idazti au txalo ta poz-oyuka daŕkezu, noski. Abegirik gurenena dagiskeozu. Agi-agian, begietatik negaŕa zintziŕik eta biotza samuŕtasunez beteta dozuzala, españetara uŕbildu ta mun-egingo dautsozu, Irakasle aundiaren gogo zintsoaren emoitzik edeŕenari bezela. ¡Bai, noski! Sabin'en gomuta oro biztu, ta bere ekiŕe ta egikun gustiak bizi-biziro biŕageriko yatzuz.* Itxaŕkundia *ta* Mendiko Negaŕa, *ta beste aunelako zenbait olérki irakuŕiaz, gure Batzaŕ*

*ta Batzokietako amaikatxo yayaldi edeŕen oroipen atsegiñak, oroipen ezin gozoagoak gogora galgalka datoŕskezuz! Idazti au, beraz, saŕi dirakuŕkezu; ta zaŕtzaroko urte iļunetan, gastealdietarantz begirakunen bat yaurti gura izango dozunean, ez dautzu ezerk oroipen gozoagorik ekaŕiko idazti aunek baño, ta uŕian, oalboko mayan izango dozu beti idazti berauxe, bere oleŕkiekaz ordu mingotsak gozatzeko...*

*Alabere, abeŕtzalea izan ez-aŕen, oleŕtizalea ba-zara, daskeintzugun idazti au abetalduko dozu; oleŕkiok berez edeŕak, goiŕiaŕak eta ziñez irakuŕgaŕiak diralako. Euzkeleŕtian, oraindaño, aunelako gutxitxo soŕtu da. Aŕese ta Beitia'k oleŕki geyago egin ebazan, ez baña obeak; gozoagoak, samuŕagoak agian; ez baña kementsuagoak, ezta gizonezkoagoak.* Lenago il *irakuŕzu, aŕen:*

*¿Ze ikusten dabe neure begijok?...*
*Au danau dakust galduta:*
*Berezi, baso, muru ta mendi,*
*Uri, baseŕi ta dana!...*

*Askuntz au kemenez ta suz beterikoa dala autoŕtuko dozu; baña kemena ta sua azkeneraño geitzen ta geyagotzen doazala be lasteŕ dakuskezu.*

Mendiko Negaŕa, *be, noski, izenak diñonez, «negaŕa» da; ez baña eme makalena, gizonezko gizonarena baño. Ez «eziñak» dakaŕan alpeŕiko negaŕa, egin-nayaren kemenak soŕtzen dauna baño. Ta ainbat uaŕtu zenegi beti Arana-Goiri'ren oleŕkietan. Goitiaŕ dabil beti, aŕanoa egaz bezela, oleŕkari bikain aunen oldozkuna. Luŕeko zirtzilkerietan ez dozu iñoiz idoroko. Bere askua oŕela-*

*koxea izan zan, eta asku ori egikunetan igaŕi beaŕ, nai ala ez. Ogasunak ez ebazan berak iñoiz be aintzat-etsi, ezta bizkera eŕaz ta erosoa, ezta gizonik geyenak onesten eta onenesten dabezan gauzok.*

*¡Oleŕtiok irakuŕi zenegiz, euzkeldun on oŕek! Irakuŕ -gai yoririk euzkeraz ez da oraindaño. Gure ele au aoz-ao eldu yaku, eguneraño. Idazti gutxidun elea da gure au; agian, idaztirik gutxienduna. Asabetzaz txaŕto esaka atsegiña ez dan-aŕen, asabok eŕi-eleari zoŕ yakon ardurea ez dabela aŕtu, ezta gutxiago bez, autoŕ beaŕko dogu. ¿Nork euren utsak bete? Geuk, ez beste iñork. Eta gure aŕtean, lenengo leŕoetan, Arana-Goiri'ťaŕ Sabin aundiak, yayotzez erdeldun eta maiťasunez euzkeldun zanak, eta euzkeldunen aŕtean oleŕkari bikain-bikaiña (abeŕtzale beroa zalako) izan zanak. Daŕaizan ingoskietan, Euzkel-Oleŕtian berak erakutsi euskun bidea dakuskezu, irakuŕle on oŕek.*

ELEIZALDE'TAŔ KOLDOBIKA.

*Gazteiz, 1918, Aziĺa, 25'an.*



# OÑAZ-LOYOLA ETA LIKONA'TAR IÑAKI, BIZKAYA'REN ZAINDARI DEUNARI BIZKATARAK *




¡Iñaki,
Jaungua'k bidalduba
Ludijan ixatera
Josu'ren
Gudarijen Buruba!

Batzarak
Autu zindun
Bizkataren
Zain Deuntzat:
Zeu zara

* 1895'kko. Garila-10'gn. egiña, abesau eban lenengoz, urte ta ila berbertako 14'gn. Begoña'ko txadonan, Bilbao'ko Euzkeldun Batzokija'k.

Zaindari ta
Jaun onena
Geurentzat.
¡Iñaki,
Entzun, aren, eiguzu
Ta geure opea artu!

Bijotza
Bizkatarak
Jayotzetik
Damotzu:
Zeuria da
Beria...
Baso, mendi, ibai, aru...
¡Zeru-gotik,
Deun-Iñaki,
Jagon, ba,
Bizkaya!

Jago-ixu
*Jaun-Goikua,*

Jago-ixu
*Lagi-Zaŕa:*
Areyo
-Auŕian Zeuk
Agindu
Bizkaŕaŕa...
Gudean saŕturik
Ezpatea aŕtuta
Bizkaŕaŕen aldez,
Donge ta areyua
Indaŕ zerutaŕaz
Zatiŕu osoro, ta...

¡Zori-ontsuba
Bizkaya beti ixango da
Zeuk, Iñaki, zaindutal





# OÑAZ-LOYOLA ETA LIKONA'TAŔ INAKI, GIPUZKOA'REN ZAITZARI DEUNARI GIPUZKOAŔAK

¡Iñaki,
Jainkoa'k bidalduba
Ludiyan izatera
Josu'ren
Gudariyen Buruba!

Batzaŕak
Autu zindun
Ipuzkaŕen
Zai deuntzat:
Zu zera
Zaitzari ta
Jaun onena
Guretzat.

¡Iñaki,
Entzun, aŕen, zaguzu
Eta gure emaitza aŕtu!

Biyotza
Ipuzkaŕak
Jayotzetik
Demazu:
Zurea da
Berea,
Baso, mendi, ibai, aŕu...
¡Ipuzkoa
Beti zaitu
Zuk ongi,
Iñaki!
Zai-zazu
*Jaun-Goikoa*,
Zai-zazu
*Lege-Zaŕa*.
Etsayen
Auŕean zuk

Agindu
Ipuzkaŕa...
Gudean saŕturik
Ezpatea aŕtuta,
Ipuzkaŕen aldez
Gaizto ta etsaya
Zeruko indaŕakin
Zatitu osoro ta...

¡Zori-ontsuba
Beti Ipuzkoa izango da
Zuk, Iñaki, zaituta!





# AVE, MARIS STELLA*

I

Aguŕ, Jaunan Ama,
Itxasoko Ixaŕa,
Beti neskutz edeŕ
Goi-ate bakaŕa.

II

Gotzonaren aboz
Ama ixena autetsi
Eme'ren ordian;
Zoruna ekaŕi.

III

Estuntzeak ausi,
Itxubak argiťu,

* Doibatz-ereseŕkija lez abestuten da.

Kendu guri gatxak,
Ona ekaŕguzu.

IV

Amatzat agiri,
Aŕtu beiz aŕenak
Geugar̃ik jayo ta
Semetzat dozunak.

V

Idebako neskutz,
Neskutz garbijena,
Garbir̃u gagixuz
Obena aldenduta.

VI

Bixitxa on geŕtu
Ta bidia sendo,
Gu, Josu ikusirik,
Poz beti ixateko.

## VII

Aintza Jaun-Aĩari,
Kisto'ri be aintza,
Goteunari bardin:
Irurei batera.





## SACRIS SOLEMNIIS*

I

Jai andi onetan
Batu bediz pozak;
Abesti deunakin
Itxaŕtu bijotzak;
Kendu gauza zaŕak,
Dana gauŕ baŕija,
Egipena ta abestija.

II

Gomutian dogu
Apari baŕija,
Josu-Kisto'k Berak
Artxu ta ogija
Bere ikaslarijei

* Doibatz-eresefkija lez abestuten da.

Emon eutsezana,
Asabeak aginduta

III

Olan lagi zaŕa
Bete ta bertatik
Bere Gorputz deuna
Beriei emonik,
Gustijak dana jan,
Bakotxak dana aŕtu
Ta jakin-erazo dausku.

IV

Makalei emon da
Gorputza jakitxat,
Laŕijei odola
Gero edaritxat
Emonik, esautsen:
«Edan egixube
Neure odola dan auxe.»

V

Gotzonen Ogija
Gixonena ein zan,
Idurija azkendu
Egijagaz eban.
¡Egi ikarakoŕa!
Jaungoiko andija
Otsein ziŕalen jakija.

VI

Kisto'k, jaupa andija
Olan irazanda,
Jauparijei utzik
Emon egimena
Eta agindu eutsen
Orduntxe geroko
Beste danei emoteko.

VII

Bat eta iru baten
Zaran Jaungoikua,
Zeu aŕtzen zaugun lez
Erdu Zeu gugana.
Gu zaliok zaindu
Zure bide leundik
Dozu argira zuzenik.





# EUZKO-ABENDEAREN ERESEŔKIJA

¡Gora ta gora Euzkadi!
¡Aintza ta aintza
Bere Goiko Jaun onari!

Areitz bat Bizkaya'n da
Zaŕ, sendo,
Zindo
Bera ta
Bere Lagija lakua.

Areitz-ganian dogu
Gurutza
Deuna,
Beti geure
Goi-buru.

¡Abestu gora Euzkadi!
¡Aintza ta aintza
Bere Goiko Jaun onari!





# GAURIK BALTZENA *

(AŔATS-ABESTIJA)

¡Dan... dan... dan!..
Eguzkijak iges-einda,
Dana iľundan.

Bizkaya estal
-Bei gau-pian:
Lagi-Zaŕa gal-eban da
Baltziťu zan.

* Abesetan da au legez:

*¡Chir... chir... chir!...*
*Angulitas al sedaso*
*Han de venir.*



## ¡ENE AMA! *

Bixi ezta
Ludi gustijan
Ene Ama
Baxen edeŕa, baña ez
Ain gaxua.
Gustiz edeŕa
Bera dalako.
Eŕbeste-pian
Jausi da...
¡Ara baŕa
Soŕtu diŕuzan
Semiok, ba,
Berari bixitxa kentzen
Dautsoela!

* Lenengoz abestu zan Legendika'n 1897'gko. iraŕa-8'gn.



## ORAINGO BIZKAI-BIZKAŘAK *

I

Abeřijak *Bizkaya* ixena dau:
*Bizkařdi* bat zan len bere;
Baña orain daukazan *bizkařak*
Ixena zikintzen dautse.

*¡Auxe da, anayak, zorigeztua;*
*Au lots andija da argiro!*
*Bizkaya'ri bere ixena berez*
*Garbi geratu etxako.*

II

Mendijetako *bizkař* zabalak
Aratu egixuz ondo,

* Abesetan da au letxe:

*- Ai, ai, txiki ¿nungua zara?*

*– Jauna, ni Mařkiñekua...*

Ta idoroko dozuz motzalez ta
Motzez beterik osoro.

*¡Auxe da...*

III

Bizkai-semien *bizkař* senduak
Ařotzak ezařitako
Kate lotsadizko zama aztuna
Pozik dakaře polito.

*¡Auxe da...*

IV

Baña euron *bizkařak* senduak
Dira, ta kate-ganian
Euron buruben saltze-diruba
Ezařtzen dabe askotan.

*¡Auxe da...*

V

Gauřko Bizkai-alaba eruok
Eztabe nai kopetarik:

*Bizkařetik* jasota ule edeřa
Dakaře, motzak letxerik.

*¡Auxe da...*

VI

Bizkai onetako *bizkařdijan*
Ezta iñun *bizkař* zindorik,
*Bizkař* gustijok dagozalako
Gusti-gustiz motzaturik.

*¡Auxe da...*

VII

Gitxi dira Bizkai-seme onak,
Gitxi dira *bizkatařak;*
Gitxi, bizkatařtasun-zamea
Zintzorik dautsen *bizkařak.*

*¡Auxe da...*

1896'gko Ořilan.



# MENDIKO NEGAŔA *

(Batzutakua) *Ene Abeŕi laztana,*
*Jausi zara España-pian*
*¡Obia erijotza da!*

I

(Bikua) Abeŕija, nok
Ikusi zindun
Iñoz eŕbestek.
Bezauta!
Orain gustirik
Txaŕena
Zeure jabe
Eta jauna da.
¡Zelan lotsaz il etzara!

* Abesetan da au letxerik:

*¡Ai ori begi edeŕa*
*Iduritzen zait epeŕa!*
*¿Gauza oberikan zer da?*

II

Antziñan zeure
Jaun nagositxat
Goikua zendun
Bakaŕik.
Orain eŕbeste
Dongerik
Dongienak
Zagoz beturik.
¡Il baño ezta oberik!

III

Zeure basotik
Atzo igoten zan
Eskari ona
Zerura.
Gauŕ erdeldunak
Saŕtuta,

Axia amen
Birauz bete da.
¡Zelan ondiño il etzara!

IV

Len zeurentzako
Lagi gustijak
Zeuk egiten oi
Zenduzan.
Gauŕ motzak einda
España'n
Zeu salduta
Zagoz an bertan
¡Zegatik iltzen etzaran!

V

Areitz-azpijan
Len bizkataŕak
Batzaŕak eŕen
Ebezan.

Gauŕ Aretxeko
Ganian
Danak dabiltz
Zoli dirutan.
Ta ¡bixi zara zeu olan!

VI

Zeure semiak
Zenduzan atzo
Zeure buruba
Zaintzeko.
Arerijuak oraindo
Eruaten
Dautzuz galtzeko.
Eta ¡etzara il ondiño!

VII

Ekandu onak
Asabeari
Zoruna emon
Len eutsen.

Ara motzenak
Gauŕ emen
Zeure bijotz
Garbija usteltzen.
Ta ¡zeu, Ama, etzara iltzen!

VIII

Abenda zaŕa
Zeure semiak
Irauten eben
Len utsik.
Aŕotzakin gauŕ
Nastaurik,
Zeurentzako
Ezta odolik.
¡Zelan etzara il bertotik!

IX

Len zeure seme
Eta alabeak.
Ezesten eben
Aŕotza.

Españarákin
Batuta,
Gauŕ ezkontzen
Dabe berbera.
¡Oraindik zeu bixi-zara!

X

Len euzkerea
Zeuk belaŕijan
Zentzuban biaŕ
Zan legez.
Euzkeldun garbi
Bat berez
Ezin da gauŕ
Idoro iñun bez.
¡Zelan etzara il zeu loŕez!

XI

Goiko Jaun ona
Kendu dautzunak

Lagi zaŕak dauz
Suzitu;
Abendea be
Il dautzu
Ta euzkera
Dana zatitu.
Ta ¡olan bixi nai dozu!

XII

Eztakust orain
Zeure zeruban
Gurutz Zurija
Argirik;
Ez zelan bez
Azirik
Areitz Deuna
Oŕleiz jantzirik.
Ta ¡bixi zara bil̄osik!

XIII

Gurutz Zurija
Baltzitu da ta

Areitz oŕleya
Oriŕu.
Geratu ezer
Etxatzu:
Seme onik,
Ama, eztozu.
¡Il, Abeŕija, zakigu!

XIV

Obi-onduan
Negaŕez zakust
Miñez beterik,
¡Gaxua!
Amatau yatzuz
Gogua
Eta odol
Oŕen berua.
Ta, Ama ¡ondiño il etzara!

XV

Ez egin negaŕ
Etzaut, Ama naî

Negaŕ-egiñik
Zu ikusi:
Zeure negaŕok
Motzari
Eragiten
Dautso baŕe-iŕi.
¡Il, Ama, lasteŕ! ¡Il zadi!

1896'gko. Oŕilan.





## ABEŔTZALE BATEN NEGAŔA

¡Euzkeldunak:
Galdu da gure ixena;
Enda danak diñoe
Eztala geyago euzkeldunik!
Mendi gustijak
Ikusten dira
Danak gori-goririk;
Eŕi gustijak, bere,
Dana ixil-ixilik.
¡Euzkeldunak:
Egijaz esaten da
Eztala, eztala
Geyago euzkeldunik!





# OTSEÑA ZARA *

Zorijona
Zeure laguna zan
Zeure lagijen
Aldijan.
Noz-nai
Zeure buruban jauna ziñan:
Gatxa zer dan etzenkijan.
Itxurik
Zeuk arotza onetsi, baña,
Ta emon zeuntson bijotza.
Ordutik ona
Otseña zara:
Jabia dozu
España.




* *Loriak udan intza bezela* lez abesetan da.

Ara zelan,
Euzkeldun Eŕija,
Jausi zarean
Lexara.
Lotsa...
Lotsarik eztau oŕetara
Dagonak azpiratuta.
Begirik
Ori ikusteko ba-daukazu,
Noz-edo-noz, Ama, itxaŕtu,
Ta oŕban ori
Kendu odolaz;
Aŕen, negaŕez
Ez kendu.





# ¡LENAGO IL!*

¿Ze ikusten dabe
neure begijok?
Au danau dakust
galduta:
berezi, baso,
muru ta mendi,
uri, baseŕi
ta dana...
gauŕ maketuak,
saloberiok,
ara biŕindu
dabela!

* Abesetan da daŕain au letxe:

*¡Ara nun diran*
*Mendi guriak!*
*¡Ara nun diran*
*Zelayak!*

¡Il nayago dot
ikusi baño
Abeŕijaren
amaya!
¿Noz euzkeldunak
Jaungoikua'ren
ixen deuna aiztu
len eben?
Orain motzak lez
lor̄uten dabe
loidun eŕderaz
egir̄en;
ekandu onak
itxir̄a, baltzak
aŕtu dir̄ube
gauŕ emen.
¡Goiko Jaun ona,
eŕuki zadi
aiztu zabenoi,
bai aŕen!

Esadazube,
euzkeldunak, ba,
nun diran zuben
eŕijak.
Eztira ageŕtzen
iñun-iñun bez
zuben asaben
lagijak,
motzak saŕtuta
zuben etxion
dira amen jabe
nausijak.
¡Ez esan iñoz
mendi onek, ba,
dirala zuben
mendijak!

¡Eŕi gaxua!
¿Jayo nintzan ni
zeure il-orduban
eltzeko?

¿Zegañik, Ama,
zeure semiok
eztira itxañtzen
ondiño?
¿Ama, ilgo zara
motzen azpijan?
¿Ilgo zara zeu
betiko?
¡Itxaron, Ama:
jarijon biot
neure odol au
lenago!

Bilbao'ko espetxian, 1895'gko. Azilan.





# ¡ENE ABEŔIJA!

Bizkaŕegi'tik
Zeru-goyenantz
Euzkija igoten
Bai-dala,
Bijotz donetik
Jaungoiko'ganantz
Egatuten da
Aŕena.
Euzkija gero
Jausten danian
Itxaso-amai
Ostera,
Seme onaren
Gogua, bere
Guraso-obira
Jasten da.

¡Gautegun zerořek
Bakařik, Ama,
Zeure Jaungoiko ta
Asabeak dozuz
Aiztuta!



## BEGOÑA'KO IXAŔ ZERUTAŔARI

Bizkai'ko mendi polit bateko
Artadi iluntsu ta zaŕan
Gabez ilargi betia legez
Ageŕtu Andra-Miren zan.

Oña, baso ta bazteŕ gustijok
Bere aŕpegi edeŕak
Betetan euzan zeruko argiz,
Danoi eskiñik eskaŕak.

Ordutik ona, lioŕ ta itxasoz,
Miren-aŕpegi garbija
Aldi gustiŕan, da gustijontzat
Goiko zorundun Ixaŕa.

Atoz, atoz, ba, bizkaŕaŕ onak,
Begoña'k daukan Artera:

Zuben Ama ta Jaunguarena
Bertan dagona Bera da.

Ama maîia, entzun eiguzu
Geure bijotzen ařena:
Zeuk emon ezik argija geuri,
Oso itxutuko geu gara.

Gauřko Bizkai au, Ama laztana,
Ezta antziñeko lakua:
Len ekandu ta lagija, ta gauř
Abenda zařa galduta.

Zaindu gagixuz, geu bizkaîařok...
¡Eřuki, Ama, zakigu!
Eta estuntza gogoř-gogořok
Zeure semioi azkatu.

1895'gko. Garîlan.





# AMA GOIKUARI *

Miren, aguŕ, Ama,
Ama maŕegaŕija,
Bizkaya'ren Euzkija,
Jaunaren Ama laztana, aguŕ.
Ara seme maŕekoŕak
Zeugana elduta
Negaŕ-bijotzaz,
Lepuan kate gogoŕak.
¡Miren, Amatxu!
¡Miren, Amatxu!
¡Amatxu!
Aŕtu eixuz negaŕok
Ta jagon bizkaŕaŕok

* Gounod'en *Ave María* lez abesetan da. Abestu zan lenengoz Sukaŕieta'n, Abiña'ko Andoni deunaren basatxonuan, 1896'gko. urtaŕilan.

Maitetasunaz,

Ta Bizkaya,

Azkatuta,

Zeuria ixango da beti

¡Bai, aren!...





# ANDERA MIREN GARBIJARI

(OŔILA-ABESTIJA)

(BATZUTAKUA) Arin etoŕi,
Etoŕi danok
Josu'ren etxe
Deunera:
Jaunakin dago
Andera Miren,
Ta Miren geure
Ama da.

I

(BIKUA) Berezijetan
Txori zolijak
Abes-egiŕen
Deutzunez;
Geuk olan, Ama,

Abestukoguz
Zeure ederkunak
Bijotzez.

II

Lare orleyak,
Lora politak
Eskintzen dautzuz
Orila'n:
Geuk, Amatxu, be,
Igar geuriok
Jartzen dautzuguz
Oñetan.

III

Geuri samiok
Indartu, Zeuri
Abes-ereko
Zindorik:
Geure bijotzok·

Garbit̄u, Ama,
Lora guranez
Beterik.

IV

Entzun eske au
Ta zeure eskaŕa
Abestukogu
Ludijan:
Geure goguok
Zerura igonda
Beti loraztu
Dit̄ezan.



## JOSU'REN BIJOTZARI ABESTIJA *

Josu'ren Bijotz
Gustiz Deuna,
Geure Jauna Zeu
Utzik Zara.

I

Bizkai gustiko
Euzkeldun onak,
Kistaŕ zinduak,
Gauŕ etoŕi,
Zuben bijotzak
Emen eskintzen
Josu onaren
Bijotzari.

* Abestuten da *Corazón Santo* lez.

II

Goguan dogu
Zeuk aŕtu zendun
Neke-ontzija
Geure aldez;
Bijotza estu,
Zanak etenda,
Odol-ixerdiz
Ta negaŕez.

III

Geu obendijok
Gaizkatuteko,
Josu maĩia
Untzau ziñan;
Ta Bijotz oŕen
Ur-odola, be,
Jarijon zendun
Gurutzian.

IV

Olan iltziaz
Etzan, be, ase
Bijotz on oŕen
Maŕasuna:
Ogi ta ardao
Iduripian
Egin zatzaku
Oŕ Laguna.

V

Geugaŕik eta
Geure aldez, be,
Jaun maŕekoŕa
Zeu il zara;
Zeugaŕik, baña
Zeure kaltez, geu
Bijotz-bakuok
Bixi gara.

VI

Zeure Bijotza
Gaŕtzen dan suban
Aŕtu geure loi
Ta gaxuok;
Gaŕ-utz oŕekin
Obena kendu,
Garbir̄u jaŕen,
Bai! goguok.

VII

Bijotzan dozun
Mar̄asun-suban
Amatako iñoz
Eztalako,
Eutsi geuriok
Bertan saŕtuta,
Noz-edo-noz oŕ
Su-aŕtzeko.

VIII

Zeure begijok,
Josu laztana,
Bigurtu ¡aren!
Euzkadi'ri:
Gatxetik bijotz
Onek azkatu
Ta Zeu'gaz lotu
Laster begi.

IX

Jauna, Zeu maite
Gura zatugu:
Gura-ixan, ba, Zeuk
Eskarijau:
Euzkotar danok
Mate zaigula
Gaizkatuteko
Aberijau.



# GABONA

## Artzañen abestija

I

Jaunaren geznarijak
Poz-geznea ekaŕi dausku:
Geure laŕe onetan
Jaun-Semia jayo bai-yaku.

II

Guazan artzain danok
Seintxu Deuna biḻatuteko:
Geure bildots baŕijak
Ixan bediz Berarentzako.

III

Ardoki baten Jauna,
Esan dausku jayo yakula:

Bera aulan txikir̃uta,
Geu geronek andir̃u gara.

IV

¡Au da Jaun er̃ukioi,
Ona ta Jaun mar̃egar̃ija!
Bere mar̃etasunak
Eratsi dau aska batera.

V

Jaunaren geznarija
Dantzubenak ¡zorijontsubak
Jatsi dan Jaungoikua
Dazabenak ¡zorijondunak!

VI

Sein ori ardokir̃an
Jayoten da, geu lakoxerik
Ardijak zainduteko:
¡Ezta iñunbez artzain oberik!

VII

Ara oŕ ardokija...
Entzuten da Semetxubari
Amaren lolotxuba...
Lotan dago; biaŕ da ixiḷi.

VIII

Jaungoiko-Semia, aguŕ;
Aguŕ, aguŕ, Jaunaren Ama;
Aguŕ, Zeu, Gixon deuna,
Neska-Amaren ezkona zara.

MIREN'EN ABESTIJA

IX

¡Ene semetxu maŕe-maŕia,
Ene Jaungoiko bixija:
Ona zeure bijotz-amatxuba,
Goi ta beko Jaun andija!

X

Mendi ta murubetan eduŕ da,
Leŕu ipaŕak latsak diŕu:...
Gixonen bulaŕ-buŕuban, bere,
Lei-bijotza auŕkiŕukozu.

XI

Ilun-ilun gauŕko gaba dago,
Ezta zeruban ixaŕik:
Gixonen adimenak bere bai
Dagoz ilun-ilundurik.

XII

Baña Ludija poz ixan bedi
Eguzkija uŕten dalako:
Argitxeko gixonen burubak
Eta bijotzak suzteko.

XIII

¡Ene odolaren odol deuna!
¡Ene begijen betseña!
¡Ene bijotzaren bijotxuba!
¡Ene sabelaren seña!

XIV

Artzaintxu zerutaŕ laztantsuba:
Nik, be, lagunduko zaŕut:
Artxuren bat igesten ba-yatzu,
Neuk eratoŕiko dautzut.

XV

Zeure begi edeŕetan dakust
Zeure bijotza osoro:
Zeure bixitz gustija dakust oŕ...
¡Ai, ene, lo, kutuna, lo!



# GOXEKO IXAŔA*

I

Goxeko ixaŕa,
Gustiz argija,
Jaunan Ama da
Geuretzako.
Eguzkiŕik lez
Goxeko ixaŕak,
Goŕik argija
Berak dauko.
*Aguŕ, argi garbi,*
*Argi-egin geuri,*
*Ekaŕi, ba,*
*Jaunan Ama,*
*Eguzkija.*

* Ama Neskutza'ren jayokunde-egunekua. *Goxeko ixaŕa...* lez abestuten da.

II

Eguzki-aur̃ez
Ixar̃a dua:
Jaunan aur̃etik
Dator̃ Ama.
Ixar̃-atzetik
Eguzki utza:
Miren-ostian
Josu Bera.
*Agur̃, argi garbi...*

III

Egunan deyez
Agiri ixar̃a:
Jaunaren deyez
Miren jayo.
Ixar̃ garbija,
Otoi au entzun:
Geuri be argi
Egir̃eko.
*Agur̃, argi garbi...*



# ITXAŔKUNDIA*

(*Goiz-abestija*)

I

Azkatasun-eguzkijak
Basotik uŕten da,
Bere argija edonun
Arin zabaltzen da.

*Itxaŕtu zaiz, bizkaiaŕak,*
*Aupa, euzkeldun gustijak:*
*¡Gora, gora antziñeko lagijak!*

II

Ixilik ba-zagoz danok,
¿Zer dozube entzuten?

* Abesetan da au legez:

*Elexara juan, eta*
*Belauniko jaŕi...*

Ara gauŕ guda-santsuak
Gaŕuzan deŕuten.
*¡Itxaŕtu zaiz...*

III

Aŕpegija goŕiŕuta
Darakus euzkijak;
Goŕijagotuko dira
Bertoko mendijak.
*¡Itxaŕtu zaiz...*

1896'gko Ofilan





## EDEŔA ZARA

Edeŕ-edeŕa zara,
Geure Abeŕija,
Ta edeŕtasun ori
Geuretzat egin da.
Ezaindu gura ba-zau
Eŕbesteren batek,
Jaso Goiko Iŕuŕirantz
Zeure begi oŕek.





# ¡BIZKATAŘAK GARA!

*Bizkatařak, bizkatařak gara:*
*¡Gora Jaun-Goikua ta Lagi-Zařa!*

I

Ezkara españařak,
Ez ařotzaliak,
Ez maketuen edo
Motzen aizkidiak.
Geure Ama danaren
Geu gara semiak;
Bera Bizkaya dala,
Geu gara beriak.
*¡Bizkatařak...*

II

Antziñan Eŕdeleŕi
Geure Bizkaya'ren

Arerijua zana
Ezta atzeratuten.
Bizkaya mafetako,
Bera-areyuaren
Arerijuak ixan
Biogu lengo-len.
*¡Bizkatafak...*

III

Geure Efi Ama dana
Afotzak askotan
Azpiratu ta bezau
Gureben antziñan;
Baña asaba zefdenak
Eratsi ebezan
Odolez ibafurik
Efi-mugea alan.
*¡Bizkatafak...*

IV

Asaba arek Bizkaya
Bestez odol baño

Ezeuskubela sor̃tu
Eztogu aztuko;
Ta euron seme onak
Orain ixateko
Odola atontzen dogu
Bizkaya'rentzako.
*¡Bizkaĩar̃ak...*

V

Geure Bizkai mar̃ia
Motzak menbetuta,
Nai biar̃ dogu danok
Olan dakuskula,
Bere Azkatasuna,
Azkatasun utza,
Ezpa-gagoz nastuta,
Motzak ezpa-gara.
*¡Bizkaĩar̃ak...*

VI

Azkaturik Bizkaya'k
Kate lotsadijak,

Lasteŕ eukiko doguz
Zorijon garbijak:
Jaungoikua lenengo,
Eta bere egijak,
Bere Semiak emon
Deuskuzan lagijak.
*¡Bizkataŕak...*

VII

Jaun Done Goikuaren
Beyon egongo da
Bizkai'ko eŕi danon
Gernika'n Batzaŕa,
Antxe lagi edeŕak
Eingo deuskuzala,
Lagi-Zaŕ'tik uŕtenik
Aŕtez-aŕte dana.
*¡Bizkataŕak...*

VIII

Oikunde onak eta
Ekandu edeŕak

Ordetuko dirube
Motzaren okeŕak;
Eta onduko dira
Mendiko bazteŕak
Ta etoŕiko yakuz
Zerutik eskaŕak.
*¡Bizkaiaŕak...*

IX

Antziñeko enda zaŕ,
Garbi ta bakana,
Orain maketueñak
Dagona betuta,
Biztuko da ta betik
Jagiko da gora,
Eta bizkaiaŕena
Bizkaya ixango da.
*¡Bizkaiaŕak...*

X

Bizkai gusti-gustijon
Euzkera gozua

Egingo dogu danok
Biaŕ dalakua;
Ta motzen eŕderea
Aldendukogula,
Gure eŕiko edonun
Aŕotz-etsiko da
*¡Bizkataŕak...*

XI

Nabaŕa, Benabaŕa,
Araba, Gipuzko,
Laburdi ta eŕitxat
Daukana Zubero
Eztiŕu Bizkai onek
Iñoz ez itxiko,
Bere anai mañak
Eurok diralako.
*¡Bizkataŕak...*

XII

¡Bixi bei Jaun-Goikua,
Bixi Lagi-Zaŕa!

¡Biz eurokin betiko
Eŕi bizkaīaŕa!
Bizkai ta Euzkeleŕi
Dana batzatuta,
Eŕez aŕotza daike
Bertotitxe bota.





# ¡KEN! *

¡Kendu, kendu
Maketuok eta
Euzkeldun maketozaliok!
¡Bota, bota
Azuŕbaltzok eta
Euron lagun gustijok!
¡Kendu, kendu,
Bota, bota
Geuria galtzen dagozanok!
¡Kendu, kendu,
Ataŕa bota, ba,
Zapal nai gabezanok!

* *Ita ni ta...* lez abesetan da.





## ¡AI, KEPANDON! *

I

Esan nora, Kepandon,
Ire alabea
Otseña ixateko
Bidaldu duan, ba.
*¡Ai, Kepandon, Kepandon!*
*Eu diruzalia:*
*Ilda be ibiliko az*
*Beti diru-bila.*

II

Nora beya jatera
Bakik eruaten:
Umia bidaltzeko
Nora begiru bez.
*¡Ai, Kepandon...*

* Abestuten da *Madalen Busturi'ko...* lez.

III

Eztakijala diñok
Eta euri zer, ta
Diruba arťu ezkero,
Poz-pozik agola.
*¡Ai, Kepandon...*

IV

Diru asko umiak
Ba-deusk eratořtzen,
Zelan ainbat ein yuan
Ik igaři nai bez.
*¡Ai, Kepandon...*

V

Bere eskubak ba-dakik
Garbi yagozala:
Ez, baña, iñok bijotzą
Usteldu ba-yeutsan.
*¡Ai, Kepandon...*

VI

Aŕo ago ikustiaz
Umia apainduta:
Txaŕija legoke edeŕ
Ondo garbiŕuta.
*¡Ai, Kepandon...*

VII

Basoko lan gogoŕaz
Loi ta latz eskubak;
Baña neska garbijak
Aŕa-aman onduan.
*¡Ai, Kepandon...*

VIII

Diruba irabazteko
Umia galdu bok,
Diru-barik entzungok
Bein betiko *oŕ konpon.*
*¡Ai, Kepandon...*



# UŔKIOLA'RAKO *
# BIDIAN

## I

### AUZOKUAK

—¿Ain arin
Nora yuan
Uso zurijena?
—Mendira,
Andoni'ri
Egiŕera aŕena.
—¿Zein aŕen
Uŕkijola'n
Deunari eŕeko?
—España'n

* Abesetan da abesti au letxe:

*—Maritxu, ¿nora zuaz*
*Edeŕ galant ori?*

Neba ona
Ez gaiztotuteko.

II

## EZKONAK ETA LENENGO UMIA

—Jon Ander,
¿Ze eskiñiko
Yeutsagu Deunari?
—Ume au
Emongeutsan
Bijotzez Berari.
—¿Zelan, ba,
Geuretxu au
Ixangok beria?
—Ba-dona
*Jaun-Goiko* ta
*Lagi-Zaŕ*-zalia.

III

### AT̃IT̃EA TA BIL̃OBA GEXUA

—At̃it̃a,
¿Deuntxubari
Ze eingeutsat eskatu?
—Laztana,
Laster̃txuben
Agigun osatu.
—Ta ¿gero
Zelan eskar̃
Emongo deutsat nik?
—Seme on
Ta bizkat̃ar̃
Zintzoena ixanik.





# ¡BOGA, BOGA!*

*¡Boga, boga,*
*Afantzale!*
*¡Boga!*

I

España-axiak
Ba-garuaz
Danok, bai, atara.
Berak dakaz bertorantz
España'n semiak:
Geuria zan urija
Geuretzat oin ezta.

II

Atxon artian
Azi nintzan,

* Abesetan da *¡Boga, boga, mariñelak!*, lez.

¡Ene uri maĩa!
Orain zeugandik nua
Uŕun-uŕunera;
Olan zu ikusi baño,
Zu ikusi ez, oba.

III

Ostera be gu
Etoŕtzian,
Motzena ba-zara..
Urak iruntsi zaike
Danori, gaxua,
Zu guk auŕkiĩu-barik
Motzak menbetuta.

*¡Aguŕ, aguŕ!*
*¡Boga!*
*¡Maĩia, aguŕ!*





## ¡AI, MIKEL, MIKEL! *

¡Ai, Mikel, Mikel, Mikel,
Au da zoritxaŕa!
Jayo nazan urija
Ezin ezautia.

Goxion igaro naz
Ikastola-auŕetik,
Ta ikaratuta nauka
Dodanak ikusi.

Ber-bertoko txotxuak,
Bat be kendu-ezik,
Gustijak lotsa-baga
Eŕdera-egiñik.

* *¡Ai, Peru, Peru, Peru...*, lez abesetan da.

Oraintxe, aspaldiko,
Azalduko dautzut:
Guk semien *maixutzat*
Maketo bat dogu.

Neskatoen *maistrea*
Euzkeldun utza da:
Erestuna imintzeko
Azuŕbaltz edeŕa.

Bijak ekaŕi yakuz
Eŕdera irakasten,
Euzkera eztala-ta
Ezetarako bez.

¡Ai, Mikel, Mikel, Mikel!
Olanik ixanik,
Lasteŕ eztogu ixango
Seme-alabarik.

*Dotriñarik* umiak
Ikasi-eziñik,

Aziko yatzuz danak
Bapez jakin-barik.

Euren buruba galdu,
Galdu lagunak be,
Ta geure uri gustija
Galduko dauskube.





## ABEŔTZALE EZKONDUBA ESPETXIAN

Ezkon samuŕa,
Ezti gozua,
Uŕe-bijotza.
Akusanat atsege,
Bakaŕ, gautegun negaŕez.
Auxe min utza. Ez ¡aŕen! ein negaŕ.
Eugaz lotu don oŕ nire bijotza.

Abeŕi Ama,
Aŕtu gogo onez
Malko ederok.
Oŕen ganez nik eztot
Zer besterik zeuri emon.
Bozu buruban eriñotz-estunik,
Oŕek loratzat oŕiŕik eskegi.

1902'gko. VI-5'gn.



## ¡ZIÑESMENA!

¡Ama maĩa!
¿Zetako,
Zeu ilda gero,
Neu bixi?
Nire begijon argija
Ziñan ta
Min uts-negaŕak
Itxali daustaz
Utz baltzaz.
Bijotza
Lokatuta dot
Atsekabiak:
Atsegin
Samuŕa
Galduta,
Atseden ezin.

Areitz zaŕ baten
Adaŕa
Gau il̄untako
Ekatxak,
Eten-ez gero
Bertan lo pozik
Eguan
Egun-txorija
Il̄un-aŕtetik
Asten da
Egaz ta egaz,
Ez nora juan
Jakiñaz,
Ez nun dabil̄an,
¡Gaxua!
Olantxe neu be
Narabil
Erijotz-putzak,
Niri zeu, Ama,
Kenduta.
Nora naroyan

Ni zori txaŕak
Eztakit.
¿Olan bixi ixan
Dagokit?

Gau itxal otza
Eguzkijaren
Ostetik,
Bein egunaro
Arpelik,
Argi ta bero
Bil-bil̄a,
Arinka,
Dabil̄an letxe:
¿Nerau be
Beti ibil̄iko
Ete-naz
Amaren bil̄a,
Iñoiz idoro
Eziñaz...
Edonun loka,

Edonoiz iĺun,
Otz, utza?
¡Erijotzaren
Gozua!
Eŕaz auŕkigai auŕkiŕen
Zeu zara.
¿Biĺauko zaŕut?
¿Zegaŕik
Ama-bagarik
Ume au iraun
Bixirik?

Goiko oñastubak
Basua
Ganetik bera
Dana argi zuriz
Beteta...
Txori estuba,
Ikusi ta, arin,
Eltzen da
Zugatz batera.

Zeruban erne
Ta nire gogo
Lañoz itxura
Jasten da
Argi-eřo bat
Niretzat...
Goiko argijaz
Neronen ama
Dakust oin bertan
Nire begira
Dagola,
Erakutsirik
Beraganako
Daukadan bide
Zuzena...
¡Ziñestuten dot
Beste bein ama
Dot ikusiko
Iñoiz be izteko!
¡Eřuki,
Eřuki, Jauna!

¡On-itza Zeuri!
¡Zeu zara
Bigun ta leuna!

¡Ziñismenaren argija,
Argijetarik
Ederŕ ta
Garbija!
¡Ez itxomenik,
Maŕasunik ez,
Zeu-barik!
Bixitxa onen
Gau baltza
Niri argiŕu!
Itxi ¡ai, aŕen!
Enaxu.





# ASTARLOA'TAŔ PAUL-KEPA'RI

Kikildūten da zeure auŕian
Neu-bekokija,
Dakusalako adi zeurian
Euzkel-euzkija.
Ańtezkarija zu ixaten zintzan,
Zu ipaŕ-ixaŕa...
¡Il ixan zara!.. Īlundu gintzan,
Zu igota gora...
Euzkeltzalerik oindiño ordutik
Asi dira asko...
Best' ASTARLOA bat amagandik
Ezta jayoko.





# DIDAŔ BAT ADIT̄U DA

Didaŕ bat adiŕu da
Geure mendijetan,
Itxal ta naigabia,
Aitor'en izketan.
«Itxaŕtu, euzkeldunak,
Esan dau didaŕak,
Itxaŕtu, mentzutera
Asaben negaŕak».



